# SANTAGEDA
## birjina eta martiria

**Sarrera abestia**



**GOAZEN ALKARTURIK** biztuta fedea
argitan zabalik maitasun bidea.

1 Entzun dezagun apaltasunez
entzun dezagun Jaunaren hitza
Bere hitzetan gure egia
gure indarra gure bizia.

2 Gurekin dogu maisu ta lagun
gurekin dogu, gurekin, Jauna!
Egin dezagun zuzentasunez
ta maitasunez bere esana!

**HITZAREN LITURGIA**

**Erantzun salmoa** 030

**Agate Deuna** Sal 030 *Udaia'24*

Zeu- re es - ku - e - tan iz - ten dot, Jau - na, ni - re bi - zi - a.

**R/. Zeure eskuetan izten dot, Jauna, nire bizia.**

Izan zakidaz harri **ba**besle,
gaztelu sal**ba**tzaile.
Zeu zaitut-eta neure hatx eta **gaz**telu,
zeure izenaren ohorez eroan nagizu eta **gi**datu. R/.

Zure eskuetan izten dot neure **bi**zia;
askatu nagizu, Jauna, Jainko **le**iala.
Poztu eta alaituko naz zure maitasu**na**gaitik,
erreparatu deutsazu-eta nire atsekabeari,

arduratu zara nitaz larri**<u>al</u>**dian. R/.
Libratu nagizu arerio eta pertsegitzaileen **<u>es</u>**kutik.
Erakutsi aurpegi argia zerbitza**<u>ri</u>** honi,
salbatu nagizu zeure mai**<u>ta</u>**sunaz.  R/.




V/. Zorionekoak zuek,
kristau izateagaitik iraintzen bazaituee,
Jainkoaren Espiritu aintzatsua
zuengan dagoala esan nahi dau-eta horrek. (R/.)

**JAUNARTZERAKO ABESTIA**

1. Ogi hau jaten dauanak izango dau bizia.
Kaliz hontan aurkitzen da Jainko-odol guztia:
**R/. Hor dogu janaria ta hor gure edaria.**

2. Jaungoikoak deitzen gaitu: bera dogu janari.
Beragan dogu aurkitzen osasuna ugari.
**R/. Zelan begiratzen deutson Jainkoak gizonari!**

3. Danok gaur jaten badogu ogi bat mahai batean
ezin izan gorrotorik gaurtik gure artean.
**R/. Alkar maitatu dagigun Jesusen izenean.**

**Azken abestia**

Kanta Jaunari kantu barri,
kanta guztiok herriz-herri,

Gora Jainkoa zeruetan,
goratu danok eleizetan,

kanta Jaunaren izenari,
mundu guztia poz-kantari.

goratu baita aingeruek
eta goratu lurrekoek.